# ERREMINTA-KUTXA

Salbuespen politikei, epaiketei eta espetxeratzeei aurre egiteko; gure eskubideen eta auzipetuen inguruan babesa antolatzeko



# ERREMINTA-KUTXA

## Nola sortu da erreminta-kutxa hau?

Pixkanaka, azken urteetan, beraien eskubideak praktikan jartzeagatik eta/edo salbuespen neurrien aplikazioaren ondorioz errepresioa pairatu duten pertsona eta kolektiboen inguruan babesa antolatuz, herri dinamika ezberdinak garatu dira han-hemenka. Horietariko zenbaitek elementu komunak izan dituzte, hala nola, jarrera desobedienteren bat agertu izana. Adibidez: Aurore Martinen inguruan 2010ean garatutako dinamika; 2011ko abenduan Gasteizen Ekaitz Samaniegoren babesean; 2012ko ekainean, Bilboko San Inazion, Gaizka Astorkizaren espetxeratzearen aurrean; 2013ko urtarrilean, Orereetako gazte auzipetuekin elkartasunean; apirilean, Donostian sortutako Herri Harresia beste gazte batzuk babesteko; aste batzuk beranduagoko Zubi Harresia Ondarroan, Urtza Alkortaren inguruan; eta azkenik, uztailean, Barañainen hasi ziren Xapo eta Luisen inguruan herri babesa eraikitzen. Borroka eraginkor eta entzutetsuak izan dira, izaten ari dira.

Aipatu borroken harira, Eleak mugimendua eta zenbait auzipetu hainbat hausnarketa partekatzen aritu gara azken hilabeteotan. Auzolanak borroka esparru berri eta berritzaile bat abiarazi duela ulertzen dugu. Eta, batez ere, ibiltzen hasitako bidean sakontzeko beharra eta baldintzak badaudela gure herrietan. Geroz eta behar handiagoa, hurrengo bi urteetan gutxienez –zerrendak loditzen jarraitzen du– 274 euskal herritar epaituko dituztelako Madrilen, salbuespenezko epaitegian, salbuespenezko legeen pean.

---

# CAJA DE HERRAMIENTAS

## ¿ De donde nace esta caja de herramientas?

A lo largo de los últimos años, lentamente y en distintas partes de nuestra geografía, han ido surgiendo iniciativas que han tejido distintas formas de protección en torno a personas y colectivos objeto de represión por hacer uso de sus derechos o por habérseles aplicados medidas de excepción. Algunas de estas iniciativas populares han compartido características, como el de haber desarrollado algún tipo de línea desobediente. A modo de ejemplo: la campaña desarrollada en 2010 en torno a Aurore Martin; la de fines del 2011 arropando a Ekaitz Samaniego; en junio de 2012 ante la detención de Gaizka astorkiza en San Inazio, Bilbo; en enero de 2013 en solidaridad con los jóvenes de Orereta; el muro popular construido en abril alrededor de otros jóvenes de Donostia; el Zubi Harresi de Ondarru en torno a Urtza Alkorta unas semanas más tarde; la construcción popular comenzada a partir de julio para denunciar la injusticia contra Xapo y Luis. Luchas que han obtenido un alto grado de incidencia social.

Al hilo de las iniciativas mencionadas, el movimiento Eleak junto a distintas personas imputadas hemos compartido reflexiones a lo largo de los últimos meses. Entendemos que el auzolan popular esta vislumbrando un nuevo espacio de lucha que presenta formas novedosas. Y, sobre todo, que se dan en nuestros pueblos y barrios tanto la necesidad como las condiciones para profundizar en este camino. Mayor necesidad aún, sabiendo que durante los dos próximos años 274 personas serán juzgadas en Madrid, en tribunales de excepción bajo leyes de excepción. Al menos, y es que la lista continúa engordando.

Ez duzu hemen aurkituko aipatu borroketan erabili ez den erreminta berri magikorik. Kutxa honen helburua da orain arte erabilitakoetatik ustez eremintarik egokienak eta horien erabilera orokortzeko aproposenak irizten ditugun moduak biltzea.

## Zer da erreminta-kutxa?

Erreminta-kutxa erakargarria izan nahi duen proposamena da, ez etsipenez hartu beharreko eginkizuna. Noski, hemen jasotzen dena berau adostu dugunok amestutako mugimendu mota da. Baina, erreminta-kutxa honen erabilera orokortzen bada, orokortzen jarraitzen badu, herriei eta pertsonei balekoa, aproposa, kitzikagarria suertatzen zaigulako izan behar du. Geure egiten dugulako.

Erreminta-kutxa bat, batasun baten moduan irudikatzen dugulako. Sare honen barnean ehuntzen dugun edozein borroka edo ekimen herrikoi, modu batera edo bestera, aurreko esperientzien eta lanean erabilitako erreminten arrastoa utzi beharko lukeela ulertzen dugulako, hau da, estilo lauso baina identifikagarri bat adierazi beharko lukeela.

Hamaika eremintaz osatutako kutxa. Denbora eta toki jakin bakoitzean kutxara hurbiltzen garen lagunek erabaki beharko dugu eskuragarri ditugun lanabes guztietatik zein, zer modutan eta zer proportziotan erabili. Borroka orokorraren parte izanda ere, tokian tokiko borroka bakoitzak bere kutsu propioa eta berezitua izango du horrela, berez.

Finean, inorena ez den –eta, ondorioz, bere egiten duen edonorena den– erreminta-kutxa. Noranzko bat proposatzen duena, eta noranzko horretan, pausoak emateko ibilera bat.

Kontuan izanik orain arteko elementu positiboetako bat herri adierazpen anitz horien freskotasuna izan dela... ikus dezagun proposamen freskoa eta erakargarria ateratzen zaigun labetik!

## Erremintak

**Herriaren/herritarren babesa**: Mugimendu zabala da gurea... baina are zabalagoa bilakatu behar dugu. Aipatu egoerak salatu nahi dituen edonori irekia behar du, injustizia horien kontra dagoen herritar oro sentitu behar da eroso dinamika hauetan. Parte hartzeko bideak dibertsifikatzen eta biderkatzen ahalegindu behar dugu. Kanporantz, harreman eta

---

Nadie encontrará aquí nuevas y desconocidas herramientas mágicas que no hayan sido previamente utilizadas en las distintas luchas mencionadas. Nuestra pretensión es juntar en esta caja las herramientas que creemos más adecuadas y las formas de generalizarlas que consideramos más efectivas.

## Qué es la caja de herramientas?

Esta caja pretende ser una propuesta que seduzca, no algo ha tomarse como una obligación resignada. Por supuesto, es el tipo de movimiento que soñamos quienes hemos consensuado lo que aquí se resume. Pero si la utilización de estas herramientas se generaliza, si continúa generalizándose, ha de ser porque nos resulten atractivas, sugerentes, adecuadas, a nosotras y a nuestros pueblos y barrios. Por que las hacemos nuestras.

*“Entendemos que toda iniciativa popular que tejamos dentro de esta red debería mostrar de una manera u otra el rastro de las experiencias previas y de las herramientas utilizadas”*

Una Caja de Herramientas, porque la visibilizamos como una unidad. Entendemos que toda iniciativa popular que tejamos dentro de esta red debería mostrar de una manera u otra el rastro de las experiencias previas y de las herramientas utilizadas. Debería reflejar un modelo, difuso pero identificable.

Una caja compuesta de distintas herramientas. Quienes nos reunamos alrededor de la caja en cada pueblo y momento concreto deberemos decidir qué herramientas utilizar de entre todas las disponibles, de qué manera y en qué proporción. Así, a la par que identificable dentro de un movimiento conjunto, cada lucha concreta desprenderá su propio olor diferenciado, lo que la hará más atractiva.

En definitiva, una Caja de Herramientas que no es de nadie y que por lo tanto es de quienquiera que la haga suya. Que propone un camino, y una forma de caminar para andarlo.

Teniendo en cuenta uno de los elementos más positivos de estas distintas expresiones populares ha sido su frescura... ¡a ver si nos sale una propuesta fresca y sugerente del horno!

interpelazio lanak garrantzi berezia du alor honetan. Ate guztiak jo behar ditugu herriz herri, orain arteko ibilbideak erakutsi baitigu “han goian” hain zurrunak eta gaindiezinak diren lubaki pertsonal zein kolektiboak “hemen behean” erlatibizatuak eta gurutzatuak izan daitezkeela. Desobedientziaren une jakin batzuk izan daitezke ikusgarrienak, baina aurreko herri lan zabal eta sakonean dago gakoa, baita dinamika desobedienteak sostengatu ahal izateko ere.

*“Sare honen barnean ehuntzen dugun edozein borroka edo ekimen herritar, modu batera edo bestera aurreko esperientzien eta lanean erabilitako erreminten arrastoa utzi beharko lukeela ulertzen dugu”*

**Desobedientzia**: Desobedientzia eragingarria gertatzen ari da zalantzarik gabe. Bidegabekeriak agerian uzteko, konfrontazioa lortzeko eta lege bidegabeen aplikazioaren aurrean gizartean gatazka eta tentsioa sortzeko baliabide bikaina dugu. Baina estatu oso baten asmoak eta asmo horiek egikaritzeko garatu duen arsenal erraldoia indargabetu nahi baditugu, desobedientziaren erreminta zorrozten jarraitu beharko dugu. Bi norabidetan behintzat. Lehenik, horren masibotasunean: jende askok praktikatzeko moduko proposamen desobedienteak luzatu behar dizkiegu herritarrei, eta desobedientziaren praktika gazteen eta/edo gizonen kontua delako ustea ezabatu behar dugu (“adituek” edo ondorio errepresibo larriak onartzeko prest dauden gutxi batzuek soilik praktikatu ditzaketen desobedientzia motak lagungarri izan daitezke noski, baina herri oso batek desobeditzean dago giltza). Bigarrenik, horren intentsitatean: ibili ahala pauso desobediente masibo geroz eta sakonagoak ematen joan behar dugu. Orain arte egin bezala. Auzipetuak hasi ziren desobeditzen, gero herritarrak. Lehendabizi ezkutatuz, ondoren herriko plazaren erdia hartuz. Hasieran sinbolikoki babestuz espetxeratuak izango zirenak, gero fisikoki atxiloketa oztopatuz. Aurrerago...

Dena den, egoera/herri guztietan ezin izango dira edo ez da nahiko ekimenak praktika desobediente jakin bat ere izatea. Horrek ez du ekimena Herri Harresien logikatik kanpo kokatzen, noski!

Adi! Ez dugu irmotasun mailaren eta babes herritar zabalaren artean, desobedientzia sakonagoen eta ho-





## Herramientas

**Complicidad y apoyo populares**: El nuestro es un movimiento amplio... pero debemos ensancharlo mucho más. Un movimiento abierto a toda aquella persona que esté en contra de estas injusticias. Que haga sentirse cómodo en su interior a quien esté dispuesto a tomar parte activa en la lucha por imposibilitar este tipo de situaciones. Debemos esforzarnos por diversificar y multiplicar las vías de participación. Hacia afuera, la labor de relaciones e interpelación tiene una importancia especial. El camino andado nos ha demostrado que las trincheras, tanto personales como colectivas, que parecen tan sólidas e infranqueables "allá arriba", pueden ser relativizadas y traspasadas "aquí abajo". Toquemos todas las puertas pueblo a pueblo por tanto. Puede que ciertos momentos desobedientes sean los más espectaculares, pero la clave está en el trabajo anterior a pie de calle, también de cara a poder sostener posteriores dinámicas desobedientes.

*"La desobediencia se está demostrando efectiva, que duda cabe. Es un precioso recurso que tenemos para visualizar las injusticias, para confrontar, para generar tensión y conflicto en la sociedad ante la aplicación de leyes injustas"*

**Desobediencia**: La desobediencia se está demostrando efectiva, que duda cabe. Es un precioso recurso que tenemos para visualizar las injusticias, para confrontar, para generar tensión y conflicto en la sociedad ante la aplicación de leyes injustas. Pero si pretendemos desactivar los planes de todo un Estado e inutilizar su enorme arsenal de excepcionalidad, no nos queda otra que continuar afilando la herramienta de la desobediencia en sus dos filos. El de su carácter masivo: Ofertando propuestas desobedientes que puedan ser practicadas por muchas, poniendo freno a la creencia de que la desobediencia es cosa de jóvenes y/o hombres. Las formas de desobediencia sólo al alcance de "especialistas", o las que por sus consecuencias represivas sólo puedan ser practicadas por unas pocas personas pueden resultar de ayuda por supuesto, pero la clave está en que desobedezca todo un pueblo. El de su intensidad: Debemos dar pasos en clave de desobediencia masiva cada vez profundos. Como se ha hecho hasta ahora. Comenzaron desobedeciendo las personas imputadas, luego personas anónimas. En un principio es-

rren masibotasunaren artean aukeratu behar. Askotan ustezko dikotomia horrek bultzatuta aritu gara... Eta hori gainditzean badatza erronka? Gure helburua presarik gabe baina etengabean gora egitea izan behar du, batean zein bestean. Geroz eta desobedienteago, geroz eta gehiago. Moduetan asmatuz gero, erremintekin asmatuz gero, aukerak baditugula uste dugu.

*"Desobedientzia eragingarria suertatzen ari da zalantzarik gabe. Bidegabekeriak agerian uzteko, konfrontatzeko eta lege ez-bidezkoen aplikazioaren aurrean gizartean gatazka eta tentsioa sortzeko baliabide bikaina dugu"*

**Herri asanbladak**: Tokian-tokian batzar irekian antolatutako pertsona eta kolektiboen asanbladak izan behar dute zutabea. Muga bakarra mugimenduari batasuna ematen dioten gutxienekoen errespetua izanik –muga zabala gero!, "Kutxa" atalean jasotzen direnak batik bat–, batzar horiek dira lanerako, eztabaidarako eta erabakiak hartzeko gune bakarra. Hasiera batean talde eragilea egotekotan, lehendabiziko zeregina luke batzar irekia antolatzearena, geroko dinamika batzar horren esku utziz. Orain arteko esperientzietan, herri bakoitzean antolatutako auzipetuek, pertsonek eta eragileek erabaki dituzte dinamika bakoitzaren ezaugarritzea eta nondik norakoak. Uste dugu horrek ondorio positibo asko ekarri dituela: talde-kohesio eta identitate handia, erabakitzeko ahalmenarekin batera dagoen erantzukizun maila hartzea, lanerako grina biderkatzea, tokian tokiko errealitateari sustraitutako dinamikak bultzatzea, lan lokala sustatzea inguru hurbilean nabarmen eraginez, bakoitzak aurreko esperientzietatik elementu batzuk hartu izana baina beste batzuk eraldatzeko malgutasuna izatea...

**Espazio publikoa**: Ez dago ezkutatzeko ezer. Aldarrikatzen duguna hain da bidezkoa eta ulerterraza non ez diogun beldurrik inork ezer entzuteari. Gure moduak hain dira zilegi eta garden non publikotasunak mesede egiten digun, gure buruz esan daitezkeen gezurrak eta kriminalizazioa zailtzen ditu. Espazio publikoa ekimen zehatzetarako erabil dezakegu, Gaztelu enparantzan deitutako asanblada irekia kasu. Herriko bizitzaren erdiguneak modu jarraian hartu izan diren ekimenetan, ordea (Donostia, Ondarroa), espazioak ekimenaren eraginkortasuna beste maila kualitatibo batean kokatu

---

condiéndose, más tarde tomando las plazas centrales de la vida pública. En los inicios protegiendo simbólicamente a quienes iban a ser encarcelados, después dificultando físicamente las detenciones. En el futuro...

En cualquier caso, no en todas las situaciones, no en todas las latitudes de nuestro mapa se podrá o se querrá desarrollar una línea desobediente. Ni que decir tiene que eso no sitúa esa iniciativa fuera de la lógica de las Herri Harresis.

¡Ojo! No debemos optar entre contundencia y amplitud de apoyo social, entre desobediencias más profundas y su carácter masivo. Hemos interiorizado en muchas ocasiones esta supuesta dicotomía... ¿Y si el reto está en superarla? Nuestro objetivo debe ser avanzar en ambos carriles, sin prisa pero sin descanso. Cada vez más desobedientes, cada vez más. Creemos que si acertamos en las formas, si acertamos con las herramientas, tenemos opciones.

**Asambleas abiertas**: La base que sostiene este movimiento son las personas y colectivos de cada pueblo o barrio que deseen sumarse a la construcción de los muros populares, organizadas en asamblea abierta. Estas asambleas son el único marco para el trabajo, el debate y la toma de decisiones. Con los elementos que otorgan al movimiento un carácter unitario por único límite –¡límites bien amplios!, básicamente los que se recogen en el apartado "Caja"- . De existir un grupo dinamizador en un principio, su primera labor sería la de convocar la asamblea abierta, para dejar a continuación la dinámica en manos de dicho espacio. En las experiencias previas que hemos vivido, han sido las personas, colectivos e imputadas organizadas en cada pueblo quienes han decidido la caracterización y dirección de las dinámicas a desarrollar. Creemos que esto ha traído muchas consecuencias positivas: una identidad y cohesión de grupo muy alta, toma de responsabilidades en proporción a la capacidad de decisión asumida, multiplicación de las energías de trabajo, diseño de dinámicas firmemente enraizadas en la realidad local, continuidad respecto a algunos elementos de experiencias anteriores pero con flexibilidad para transformar y renovar lo que se considere oportuno...

**Espacio público**: No escondemos nada. Nuestras reivindicaciones son tan justas y entendibles que no tenemos miedo a que nadie escuche nuestros planteamientos y debates. Nuestras formas son tan lícitas y transparentes que la visibilidad nos favorece, dificulta las mentiras y la criminalización en torno nuestro.

du. Ahalbidetzen duen ikusgaitasun orokorrarengatik, baina baita parte hartzeko aukerak biderkatzea dakarrelako ere (emanaldi kultural batean parte hartu edo hori ikustera joan, janaria eraman, egonean egon, propaganda jarri eta ekoiztu, lo-txanda bat egin...). Ezin izango dugu beti herriko plaza hartu... baina kontuz! Badugu espazio pribatu bat publiko bilakatzea, itxialdi batekin esaterako, Ekaitz Samaniegoren kasuan Los Angeles elizarekin egin bezala. Ez da berdina, baina bai oso aproposa, aurretik aipatu parte hartzeko bide horiek guztiak ahalbidetzen dituelako. Aske Guneak, beraz, plazan zein leku itxiago batean egin, erreminta bereziki eragingarriak izan dira. Baita azken faktore batengatik ere, eta ez horregatik garrantzi gutxikoa. Elkarbizitza esparru jarraitu bat sortzean, komunitate izaera indartzen da. Bizi komunitate bat, borroka komunitate bat, emozio komunitate bat. Bereziki auzipetuek bertan parte hartzen dutenean, oso une hunkigarriak, gogorrak, xamurrak partekatzen baitira. Eta honekin, bada, goazen hurrengo erremintara!

*"Tokian-tokian batzar irekian antolatutako pertsona eta kolektiboen asanbladak izan behar dute zutabea"*

**Emozioak**: Mugimendu emozionala izaten ari da sortzen ari garen hau. Barne-mailan zein kanpora begira. Barne-mailan, oso bizipen indartsuak konpartitzea dakartzaten dinamikak garatu direlako (espetxera doazen pertsonekin eta beren ingurukoekin azken askatasun aste eta uneak bizitzea itxialdietan edo Aske Guneetan, horiei nola egingo zaien aurre guztion artean eztabaidatzea...). Eta hori "kanporantz" transmititu da modu naturalean. Esaterako, oso adierazgarria –eta eraginkorra– izan da zentzu horretan auzipetuen izenak etengabe erabiltzeko joera, horrela bidegabekeriari aurpegia, izen-abizenak, sentimenduak jarri baitzaizkio. Emozioak lehen planoan, ez arrazoibide politikoak baztertuz, horiekin batera baizik. Sentimendu eta emozio jakin batzuei ateak ireki, besteei itxi gabe. Maitasuna eta sufrimendua azaleratu ditugu, baina baita amorrua eta haserrea ere. Ahultasuna eta ezina ikusgarri egin ditugu, baina baita indarra eta konfrontaziorako prestutasuna ere. Alaitasuna eta umorea adierazi ditugu ere, egoeraren gordina ezkutatu gabe. Bi poloekin jolastu dugu aldi berean. Injustizia inposatu nahi dutenei orain hortzak erakutsi, ora-

---

Podemos utilizar el espacio público para iniciativas concretas, como la asamblea abierta convocada en la Plaza del Castillo. Pero en las ocasiones en que los espacios centrales de la vida pública han sido tomados de manera continuada (Donosti, Ondarru), la incidencia de la iniciativa popular ha dado un salto cualitativo. Debido a la visibilidad general que posibilita, pero también porque multiplica el abanico de formas para poder participar (tomar parte de un acto cultural o asistir a él, llevar comida, una simple visita, poner o producir propaganda, hacer un turno de dormir...). No siempre podremos ocupar las plazas de nuestros pueblos y ciudades... ¡pero ojo! Si que podemos transformar un espacio privado en público, mediante un encierro por ejemplo, tal y como hizo la dinámica Ekaitz Etxean con la iglesia de Los Angeles. Sin llegar a ser lo mismo, sí resulta muy apropiado, ya que posibilita todas las formas de participación arriba mencionadas. Los Askegunes por lo tanto, ya sean en plazas como en espacios más cerrados, se han mostrado como herramientas muy válidas. También por un último factor, y no precisamente el menos importante. Al generar un espacio de convivencia continuado, se refuerza el sentimiento comunitario de pertenencia. Una comunidad de vida, una comunidad de sentimientos y emociones, una comunidad de lucha. Especialmente cuando participan de ella las personas imputadas, porque se comparten vivencias muy emotivas, tanto duras como entrañables. Y dicho esto...

**Emociones**: Esto que entre tantas estamos tejiendo esta siendo un movimiento emocional. Tanto hacia dentro como hacia fuera. A nivel interno, porque se desarrollan dinámicas que suponen compartir momentos muy intensos (vivir junto a las personas imputadas y su entorno más cercano los últimos días o semanas de libertad en los Askegunes o encerronas, debatir conjuntamente la forma de hacerles frente...) Y esas emociones han transcendido hacia afuera de manera natural. Resulta indicativo –y efectivo- en este sentido el continuo uso de los nombres de las personas imputadas, poniendo rostro, nombres y apellidos, sentimiento a la injusticia. Situar en primer plano los sentimientos sin relegar por ello los razonamientos políticos, junto a estos. Abrir la puerta a ciertas emociones y sentimientos, sin cerrársela a otros. Hemos expresado sufrimiento y amor hacia las personas imputadas, pero también rabia y hartazgo. Hemos visibilizado nuestra impotencia y nuestra debilidad, pero también fuerza y determinación para confrontar. Nos hemos permitido la alegría y el humor, pero sin ocultar con ello la crudeza de la situación. Hemos jugado con los dos polos al mismo tiempo. A quie-

in ipurdia, han mingaina, hemen hatza. Bidelagunekin irribarreak, konplizitatea zein negarrak konpartitu.

Sentimenduak eta emozioak dinamiken erregai nagusietakoa izan dira. Eduardo Galeano mundu mailan famatuak idatzi zuen pertsonak sentipentsalariak garela: sentitzen dugunak gure mundu ikuskerari eragiten dio, pentsatzen dugunak gure sentimenduei erasaten die. Bada, gure Porrotx maitagarriak ideia horren 2.0 bertsioa eman zigun aspaldi, osatuagoa: "Sentitu, pentsatu... ekin!".

Adierazi nahi dugunaren adibide solte batzuk:

- http://www.youtube.com/watch?v=1l0L-6q9z794#t=362
- http://ekaitzetxean.wordpress.com/2012/01/14/parece-ser-que-la-ertzaintza-se-suma-tambien-a-la-ola-de-solidarid-hacia-el-joven-ekaitz-samaniego-jiji/
- http://www.youtube.com/watch?v=62fc-gE8umzE
- http://www.youtube.com/watch?v=8ipR-augB_Mc
- http://www.youtube.com/watch?v=FN-f_24RLph4&feature=youtube_gdata_player

**Konpromisoak eta malgutasuna**: Bereziki ildo desobedienteari dagokionez, gehienetan auzipetuen konpromiso pertsonaletik abiatu dira Herri Harresiak, ondoren konpromiso kolektiboak hartzen duelarik protagonismoa. Baina eragina aldebikoa dela ez dugu ahaztu behar. Auzipetu askori konpromiso herritarraren tamaina ikusita loratu zaio "zer edo zer gehiago" egiteko beharra eta, garrantzitsuena, gogoa. Elkar elikatzen jarraitu behar dugu hortaz. Auzipetuak LIBRE jarrai dezaten lortzeko moduko konpromisoetaraino iristea izan behar dugu jomugan.

Malguak izateari utzi gabe ordea, hori izaten ari baita beste bereizgarrietako bat. Barnera zein kanpora begira. Barnera begira, auzipetuek askotariko jarrerak hartu izan dituzte, baita sumario bereko auzipetuek ere. Eta erabateko batasun eza dinamiken kalterako izan gabe (Donostiako Aske Gunean ez ziren auzipetu guztiak egon, Oreretako auzipetu guztiak ezkutatu ez ziren bezala). Hortik saiatu behar dugula uste dugu: epaiketa edo espetxeratzearen aurreko jarrera auzipetu guztien artean adostu, baina dinamika baten aurrean jarrera ezberdinak kabitu daitezen ahalbidetuz, guztiak ere positiboki eragin dezaten bermatuz. Praktikak posible dela erakutsi digu. Kanpora begira, aldiz,

---

nes pretender imponernos la injusticia, enseñémosles ahora nuestros rabiosos dientes, después nuestros hermosos culos, aquí la lengua, allí nuestro dedo erguido. Entre nosotras, compartamos sonrisas, complicidades y llantos.

Los sentimientos y emociones han sido uno de los principales motores de estas dinámicas. El mundialmente conocido Eduardo Galeano, escribió que las personas somos seres sentipensantes: que lo que sentimos afecta a nuestra manera de entender el mundo, que nuestros pensamientos afectan a nuestra forma de sentir. Más cerquita, nuestro entrañable Porrotx nos dio hace ya tiempo la versión 2.0 de esta idea, una versión más completa: "Sentitu, pentsatu... ekin!" (sentir, pensar, actuar!).

*"La base que sostiene este movimiento son las personas y colectivos de cada pueblo o barrio que deseen sumarse a la construcción de los muros populares, organizadas en asamblea abierta"*

Unos cuantos ejemplos al azar de lo que decimos:

- http://www.youtube.com/watch?v=1l0L-6q9z794#t=362
- http://ekaitzetxean.wordpress.com/2012/01/14/parece-ser-que-la-ertzaintza-se-suma-tambien-a-la-ola-de-solidarid-hacia-el-joven-ekaitz-samaniego-jiji/
- http://www.youtube.com/watch?v=62fc-gE8umzE
- http://www.youtube.com/watch?v=8ipRaugB_Mc
- http://www.youtube.com/watch?v=FNf_24RLph4&feature=youtube_gdata_player

**Compromisos y flexibilidad**: Especialmente en lo que respecta a la línea desobediente, las Herri Harresis han partido habitualmente de los compromisos personales de las personas imputadas, tomando a continuación protagonismo el compromiso colectivo. Pero no olvidemos que la relación es bidireccional. A muchas de las personas imputadas la necesidad, y lo verdaderamente importante, las ganas, de hacer "algo más" les han nacido tras ver y sentir la contundencia del compromiso popular. Debemos continuar alimentándonos mutuamente por tanto. Sin perder de vista el objetivo que nos guía, el de

ez gara desobedientzia egiteko ez auzipetuei babesa emateko modu zehatz batean gotortu, ez dugu metodo jakin bat errealitate guztiei aplikatu nahi izan. Moldakortasuna, berritasunerako eta aldatzeko gaitasuna agerikoak izan dira hasieratik. Oso gauza garrantzitsua aurrera begira, besteek ere moduak aldatzen joango baitira.

Kutsaduraz in crescendo... LIBRE izan arte!: Gure helburua ez da nolanahikoa –salbuespen politikekin eta epaiketa eta espetxeratzeekin amaitu LIBRE bizi arte–, gure aurkaria ez da txikia. Asko egin da... baino askoz ere gehiago da egiteko daukaguna. Nahitaezkoa da in crescendo joatea, beraz, egun ez diogu inongo kosterik sortzen Estatuari. Horrek ez du esan nahi, ordea, hurrengo pausoa beti aurrekoa baino masiboagoa eta desobedienteagoa –gogoratu, biak aldi berean– izan behar duenik eraginkorra izateko. Donostiako Herri Harresiaren ondoren hori baino "gehiago" ez den auzipetuen inguruko dinamika batek ez du ekarpenik egiten? Mesedez! Noski, Donostiakoa txiki uztea da gure ortzi-muga... baina horretarako baldintzak egonbehardute-sortubeharditugu. Kontua ez da pauso oro aurrekoa baino luzeagoa izatea halabeharrez –horrela egin dugu estropezu zenbaitetan–, pauso guztiak goraka ari den bidea ibiltzen laguntzea baizik. Nola lortu geroz eta auzibide gehiagoren aurrean, ez soilik espetxeratzearen unean baizik eta baita epaiketarenean ere, herri dinamika gehiago eta desobedienteagoak piztea? Orain arte dinamika hedatu den bitarteko berarekin, kutsaduraz. Inori ezer exijitu gabe, aurreko esperientzien ereduek, eraginkortasunak, erakargarritasunak auzipetu zein herritarrongan horretarako gogoa piztu dezaten itxaronez. Auzipetuok geroz eta jarrera desobedienteagoak hartu behar ditugu, herritarrok beste horrenbeste; desobedientzia honek eta horren inguruko babesak geroz eta zabalagoa behar du. Baina jarrera horiek konbentzimendu pertsonal eta kolektiboen ondorio izan behar dute, sedukzioaren ondorio, ez aginduen ondorio.

**Komunikazioa**: Orain arteko arrakastaren ardatzetako bat komunikazio arloko lana izan da. Estetika zein mezu aldetik zaindua izan denean, berritzailea izan denean, emozioak transmititzeko gaitasuna erakutsi duenean (Matrioskak, alarma gorriak, "gure etxeko ateak zabalik dituzue", herri harresia kamiseta laranjekin, ezkutatuen bideoak, muntaia umoretsuak...) koska bat gorago jarri du ekimenaren oihartzuna. Horren barnean, teknologia berrien erabilera gakoa izaten ari da, ekimenen efektua biderkatzen baitu. Hedabi-

---

llegar a compromisos tales que posibiliten que todas las imputadas continúen LIBREs.

Pero sin dejar de ser flexibles, y es que la flexibilidad está siendo otra de las características que define este movimiento. Las imputadas están tomando distintas actitudes personales, también imputadas de mismos sumarios. Sin que esta diferencia en las actitudes haya supuesto debe alguno para la dinámica general (En el Askegune donostiarra no estuvieron todos los imputados, igual que tampoco todos los jóvenes de Orereta se ocultaron). Creemos que hay que intentarlo por esa vía: consensuar entre todas las personas afectadas actitudes ante los juicios o encarcelamientos, pero posibilitando que en una misma dinámica quepan distintas posiciones personales, haciendo de manera que todas incidan positivamente. La práctica nos demuestra que es perfectamente posible. De cara a la sociedad y a la calle por otra parte, no nos hemos enrocado en una forma concreta de desobedecer o de organizar la protección en torno a las personas directamente reprimidas. No hemos pretendido aplicar un mismo patrón a todas las realidades. La capacidad de cambio, la de renovar, la adaptabilidad han sido notorias desde el comienzo. Un aspecto imprescindible para continuar caminando, y es que ellos también irán transformando sus métodos.

Increscendo por contagio... hasta ser LIBREs: Nuestro objetivo no es precisamente humilde, terminar con las políticas de excepción y los encarcelamientos hasta vivir LIBREs, nuestro enemigo no es pequeño. Se ha hecho mucho, pero es mucho más lo que nos queda por hacer. Hoy en día no representamos ningún coste político frente al Estado, resulta imprescindible por lo tanto caminar increscendo. Eso no significa en cambio que todo paso deba ser más masivo y más desobediente –recordemos, ambos al mismo tiempo- que el anterior. Tras la experiencia de Donosti, ¿acaso no aporta ninguna dinámica en torno a personas imputadas que no sea "superior"? ¡Estaría bueno! Por supuesto que aspiramos a dejar pequeño lo de Donosti, pero para ello handeexistir-debemoscrear las condiciones adecuadas. La cuestión no es que cada paso sea obligatoriamente más largo y profundo que el anterior, de esta manera ya hemos tropezado en alguna ocasión. Sino que cada paso ayude a continuar andando un camino que en términos generales pique hacia arriba.

¿Cómo conseguir multiplicar el número de iniciativas populares y de prácticas desobedientes, no sólo ante situaciones de encarcelamiento sino también ante juicios? De la misma manera que se han extendido hasta el momento las iniciativas precedentes: Por con-

de propioak sortu dira, eta gainontzeko hedabideei ekimenak berak sortutako informazioa bidali zaie. Hedabide ofizialekiko mendekotasuna, ekimenak gizartean oihartzuna izateari begira, txikitu egin da. Denbora errealean egiteko gaitasunak, bestalde, atxiloketa uneetan bereziki, eragina biderkatu du.

## Kutxa

Nola irudikatuko ditugu jendartearen aurrean pack bakarrean solte egon zitezkeen erreminta gutzi horiek, herri lan komun honi ekiteko? Zerk emango dio batasuna ehundu nahi dugun sareari gure eta gure herrikideen begietara? Elementu gutxi batzuk:




tagio. Sin exigir nada a nadie, con la intención de que cada experiencia precedente, su nivel de incidencia y lo atractivo de sus maneras contagie ilusión entre los imputados y en cada una de nosotras. Las personas imputadas debemos tomar actitudes cada vez más desobedientes, otro tanto debemos hacer el resto, esta desobediencia y el apoyo en torno suya deben extenderse. Pero dichas actitudes deben ser consecuencia de convencimientos personales y colectivos, fruto de la seducción y no de obligaciones.

**Comunicación**: Una de las claves de los éxitos pretéritos ha estado en el trabajo comunicativo. Cuando ha sido mimado tanto estética como argumentativamente, cuando ha demostrado capacidad para transmitir emociones, la iniciativa ha dado un salto (Matrioskas, alarma roja, "gure etxeko ateak zabalik dituzue", el muro popular con sus camisetas naranjas, videos de las personas escondidas, humor...). El uso de las nuevas tecnologías y de las redes sociales ha sido central, ha multiplicado el eco de las dinámicas. Se han construido medios de comunicación propios y se ha hecho llegar al resto de medios información propia. La dependencia respecto a los medios oficiales se ha disminuido. Además, el hecho de comunicar en tiempo real, especialmente en los momentos de detención, ha supuesto un impacto enorme.

## Caja

¿Qué hará visualizar a la sociedad que todas estas herramientas sueltas, que podrían estar desperdigadas, forman un pack común? ¿Qué dará unidad a la red que pretendemos tejer? Unos pocos elementos:

**Naranja**: Nuestra caja de herramientas es naranja, naranjas por tanto sus distintas expresiones.

**Lemas**: No existe una única consigna, pero si lemas y conceptos que se repiten como un tantra, que cada pueblo adapta a su realidad y preferencias. El principal sería el LIBRE (De la solidaridad al compromiso...

**Laranja**: Gure erreminta-kutxa laranja da, laranjak, beraz, horren adierazpenak.

**Leloak**: Ez dago lelo bakarra, baina bai tantra baten moduan errepikatzen diren lelo eta kontzeptuak, herri bakoitzak bere errealitate eta nahietara egokitzen dituenak. Nagusiena LIBRE litzateke (Elkartasunetik konpromisora, LIBRE!; salbuespen legedien gainetik, LIBRE!; desobedientziaz LIBRE bizi; epaiketarik ez, LIBRE!...).

*"Disidentzia eskubidearen defentsa egin behar dugu oro har, hau baitago arriskuan. Eta oinarrizko eskubide bat denez, gizarte osoa interpelatu behar dugu honen defentsan"*

**Bitarteko komunikatiboak**: Badaude jada sortuak guztion zerbitzura erabiltzeko tresnak. Herri Harresiaren twitter zein Facebook kontuek 7.000 jarraitzaile dituzte, eta webgunea ere hor da. Oreka aurkitu beharko genuke, bitarteko komun horiek probestu bai, baina tokian tokiko ekimen komunikatiboak sortzea zaildu gabe. Hori praktikan zertan gauzatzen den eta nola egikaritu guk behintzat ez dugu argi oraindik.

Bitarteko grafikoen estilo-liburu bat dugu ere erabili nahi duenarentzako (letra mota, kolorea, leloak, ideiak materialarentzako, txantiloiak... Ikus amaieran eranskina). Aurreko guztia bezala, estilo-liburua bere osotasunean edo zatika erabili daiteke, erreferentzia bezala baina moldatuz, berrituz, hobetuz.

**Mezua**: Lau mezu nagusi, bateragarriak (horrek ez du esan nahi mezu bat prestatzen dugun guztietan laurak eman behar ditugunik!). Jarraian doazenak Herri Harresientzako oinarrizko mezu bezala ulertzen ditugu, eskubide parametroetan eta batzeko logikan pentsatuak. Horretaz gain, kasuan kasuko prozesuan auzipetutako pertsonek eta kolektiboek ahots propioa dute. Hortik egin beharko du nork bere "delitu" berezituaren apologia: bakearen alde lan egitea, independentziaren alde, internazionalismoan, gazteri kritiko eta borrokalari baten alde...:

- Salbuespen politiken kontra eta disidentziarako eskubidearen alde: Salbuespen politikak, ikur nagusi salbuespen legediak eta salbuespen epaitegiak, Eskubide

---

LIBRE!; frente a las políticas de excepción, LIBRE!; desobedientziaz LIBRE bizi!; No a los juicios políticos, LIBRE!, ...)

**Herramientas comunicativas**: Disponemos ya de medios propios cuyo deseo es el ser utilizados al servicio de todas. Las cuentas de facebook y twiter de la Herri Harresia tienen más de 7000 seguidores, ahí tenemos también la página web. Deberíamos dar con el equilibrio adecuado, exprimiendo sus posibilidades pero sin dificultar con ello que se continúen desarrollando medios más locales. Nosotras al menos, aún no tenemos claro en que se concreta esto.

Disponemos también de un libro de estilo de recursos gráficos abierto a la utilización de todas nosotras (tipo de letra, color, ideas para material, plantillas... anexo al final del texto). Como todo lo que contiene esta caja, se puede utilizar como referencia tomando el todo o una parte, adaptándolo, renovándolo, mejorándolo.

**Mensaje**: Cuatro ideas-fuerza principales, compatibles entre sí (¡eso no significa que cada vez que nos expresemos tengamos plantar las cuatro!). Estos serían los contenidos básicos para las Herri Harresis, que entendemos deben ser aglutinadores, en clave de derechos. Además de ello, las personas y colectivos imputados en cada procedimiento también tienen voz propia, que utilizará cada cual para hacer apología de su "delito" concreto –trabajar por la paz, por la independencia, por el internacionalismo, por una juventud crítica y rebelde...-

- Contra las políticas de excepción, a favor del derecho a la disidencia: Las políticas de excepción, con los tribunales y las leyes de excepción como elementos más visibles, son vulneradoras de los Derechos Civiles y Políticos estructuralmente. Los DCP (derecho a organizarse, a expresarse libremente, ha manifestarse...) son las herramientas de que disponemos las personas para actuar individual o colectivamente en sociedad. Oponiéndonos a lo que nos desagrade o promoviendo alternativas en cualquier ámbito que nos venga en gana: socioeconomía, sentimientos identitarios, en defensa de ama-lurra, en la lucha de genero... En este sentido, las políticas de excepción y la vulneración de los DCP no son problemas que atañan exclusivamente a la Izquierda Abertzale o al conflicto nacional. Las medidas de excepción están siendo apli-

Zibil eta Politikoak urratzen dituzte, egituratik bertatik. Antolatzeko eskubidea, askatasunez adieraztekoa, manifestatzekoa... EZPak herritarrok indibidualki eta kolektiboki gizartean eragiteko ditugun tresnak dira, dagoenaren kontra egin nahiz bestelako ereduen alde egiteko edozein esparrutan (arlo sozioekonomikoan, naziotasunean, ama lurraren defentsan, genero borrokan...). Horrela, bada, salbuespen politikak eta EZPen urraketak ez dira Ezker Abertzalearen arazoa, edo nazio-gatazkari soilik loturikoa. Salbuespen neurriak oso mugimendu anitzei aplikatzen ari zaizkie: tartalariak, grebalariak, Hipotekak Kalteturiko Plataformak... Nazio ongatazkaren zein arlo sozioekonomikoaren bilakaera inboluzionista ikusirik, eta horren aurkako edozein diskurtso kritiko indargabetzeko administrazioek azaltzen duten jarrera bateratua kontuan hartuta, gehiagori ere aplikatuko zaizkio aurrerantzean. Oso modu zabalean ulertu, eta gizarte eraldaketaren alde egon daitekeen edonori egungo eta etorkizuneko arazotzat aurkeztu behar diogu. Disidentzia eskubidearen defentsa egin behar dugu oro har, arriskuan baitago. Eta oinarrizko eskubide bat denez, gizarte osoa interpelatu behar dugu horren defentsan.

- Salbuespen neurri horiek ez dira zilegi ez duela hamar urte ez orain, baina egun eta Euskal Herrian, inoiz baino tokiz eta denboraz kanpoago daude. Urtetako gatazkari bidezko konponbide bat eman nahi bazaio, ezinbestekoa da salbuespen politika hauekin amaitzea. Kartzelak husteko garaia da, ez betetzen jarraitzekoak.
- Legea vs justizia: Desobedientziaren praktika eta zilegitasuna indartu nahi ditugunez, legediaren aurka argudiatu behar dugu. Lege horiek ez dira bidezkoak, eta, ondorioz, ez direla bete behar aldarrikatzen dugu. Legea eta justiziaren artean hautatzera behartzen bagaituzte, justiziaren alde lerratzen gara, horrek ondorioak ekar diezazkigula jakinda ere. Desobedientzia uneetan, eztabaida legedia vs justizia dikotomian kokatu behar dugu.
- Herri presioak soilik lor dezake salbuespen politikak indargabetzea eta auzipetuak LIBRE bizi ahal izatea. Askotariko herri pre-

---

cadas a muy distintos movimientos y luchas sociales, desde huelguistas a tartalaris, pasando por las Plataformas de Afectados por la Hipoteca. Y vista la deriva involucionista, tanto en lo que respecta al conflicto nacional como en materia socioeconómica, y la decisión conjunta de las distintas administraciones de neutralizar cualquier discurso crítico, su aplicación se extenderá aún más. Tenemos que conseguir que cualquiera de las personas que estamos a favor de la transformación social, entendido esto en su máxima amplitud, sintamos esto como un problema presente y futuro. Es necesario reivindicar el derecho a la disidencia, precisamente porque está en peligro. Y, al ser un derecho básico, tenemos que interpelar al conjunto de la sociedad en su defensa.

*"Es necesario reivindicar el derecho a la disidencia, precisamente porque está en peligro. Y, al ser un derecho básico, tenemos que interpelar al conjunto de la sociedad en su defensa"*

- Estas medidas de excepción no son legítimas, ni ahora ni hace diez años. Pero hoy en día, en Euskal Herria, están además absolutamente fuera de lugar y tiempo. Si se desea dar una resolución justa al conflicto de tantos años, es imprescindible dar carpetazo a la política de excepción. Es tiempo de vaciar las cárceles, no de llenarlas.
- Ley Vs justicia: Si pretendemos reforzar la práctica y la legitimidad social de la desobediencia, es necesario que argumentemos en contra de la ley. Estas leyes no son justas, reivindicamos en consecuencia que no deben ser aplicadas. Si nos obligan a optar entre ley y justicia, lo hacemos a favor de esta última, aún a sabiendas de que de ello se pueden derivar consecuencias represivas. En momentos de desobediencia, debemos situar el debate en la dicotomía ley Vs justicia.
- Tan sólo la presión popular puede lograr la desactivación de las políticas de excepción y que las personas hoy imputadas puedan vivir LIBREs. Una presión popular variada. Amplia, desobediente, diversa, firme... Está en nuestras manos, es nuestra responsabilidad.

sioa. Zabala, desobedientea, anitza, irmoa... Geure esku dago, geure erantzukizuna da.

**Egitura**: Sare intermitente bat datorkigu burura. Euskal Herriko mapako puntu desberdinetan agertzen eta desagertzen doazen Herri Harresiak dira sarearen funtsa. Agertu, herrian edo auzoan epaiketa bat, espetxeratze bat datorrela aurreikusi eta bertako pertsona eta kolektiboek eraso horren aurrean Herri Harresia eraikitzen hastea erabakitzen dutenean. Desagertu, Herri Harresiaren sorrera eragin zuen egoera amaitzean. Noski, lan jarraitua egitea ere badago ildo honetan. Baina, batetik, esperientziak erakutsi digu problematika zehatzen inguruan jaio eta hil egiten diren ekimenak direla. Bestetik, indar herritarrak ildo antierrepresibo batean itotzea ekiditeari begira ere ez da dinamika txarra. Sarea ehuntzeko, ordea, sakabanatutako puntuen artean nolabaiteko lotura edo komunikazioa egon behar du. Lotura hori aipatu elementu komunek (kolorea, leloak...) eta mugimenduaren estilo orokorrak (emozionala, desobedientea, zabala...) ematen diote. Horren barnean, Eleak mugimenduak hartuko luke ardura beharrezkoa denean estilo eta elementu komun horien transmisioa eta azalpena egiteko. Erreminta-kutxa hau Herri Harresia sortzear dagoen herrian aurkeztuz, esaterako. Zergatik Eleak? Epaiketen eta espetxeratzeen zein Eskubide Zibil eta Politikoen gaia modu jarraituan lantzen duen mugimendu bakarra delako.

Eleak mugimenduak eta zenbait auzipetuk –nahi duen oro dago gonbidatua– azken hilabeteetan sortutako hausnarketa eta eztabaida gunea mantenduko luke-te. Hortik proposamenak, hausnarketak edo ideiak sor daitezke, horietako batzuk Herri Harresietara bideratu daitezke, baina, Erreminta-Kutxa honekin egin bezala, proposamena hartu edo utzi egin daiteke.

## Finean

Amesten dugun sare herritarra malgua da, emozionala, herri eraikuntza bakoitzean inplikatzen direnek zehaztua, arau zurrunik gabea baina identifikagarria, askotarikoa, konpromiso pertsonal eta kolektiboen gainean eraikia, zabala bezain desobedientea, goxoa bezain tinkoa, malkoak eta pozak konpartituko dituena. LIBRE izan arteko bide luzean azalean zein barrenean zauriak utziko dizkigun borroka... eta gozatuko duguna!!!

---

**Estructuración**: Nos viene a la mente una red intermitente. Lo esencial de la red son las Herri Harresis que van apareciendo y desapareciendo en distinto puntos del mapa de Euskal Herria. Aparecen cuando en previsión de juicios o encarcelamientos, personas y movimiento asociativo de un pueblo o barrio deciden organizarse para comenzar la construcción de un Herri Harresi. Desaparecen, al finalizar la situación que dio origen a su creación. Por supuesto que hay posibilidades de realizar un trabajo continuado en este ámbito. Pero la experiencia nos ha demostrado que son iniciativas que nacen y mueren en torno a problemáticas concretas. Y, por otra parte, tampoco es un planteamiento negativo de cara a no movilizar todas las energías populares en un planteamiento antirrepresivo. Para ser una red en cualquier caso, algún punto de unión o comunicación deberá haber entre estos puntos desperdigados. Esa unión es la que garantizan los elementos comunes ya tratados –color, lemas...- y el estilo general del movimiento –emocional, desobediente, amplio...-. Dentro de este esquema, el movimiento Eleak sería el encargado de la transmisión y explicación de dichos elementos. Por ejemplo, haciendo una exposición de esta Caja de Herramientas allí donde se esté gestando una Herri Harresi. Y es que Eleak es hoy en día el único movimiento que trabaja de forma continuada en torno a los Derechos Civiles y Políticos, a juicios y a encarcelamientos.

Eleak y algunas personas imputadas –todas aquellas que lo deseen están invitadas- mantendrán el espacio de debate y reflexión creado estos últimos meses. Desde allí deberían surgir ideas, reflexiones y propuestas, algunas de ellas podrán ser compartidas con las Herri Harresis, pero al igual que ocurre con esta Caja de Herramientas, como propuestas que se puedan asumir, adaptar o descartar.

## En definitiva

La red popular que soñamos será flexible, emocional, concretada por cada persona que se implique a esta construcción popular, sin reglas rígidas pero identificable, diversa, tejida a base de compromisos personales y colectivos, tan amplia como desobediente, tan dulce como contundente, en la que compartiremos lamentos y alegrías. Una larga lucha por ganar el vivir LIBREs, que nos abrirá heridas en la piel y en nuestro interior... ¡y que disfrutaremos!

# Nortasun irudia:



Herritarren harresia irudikatzeko: GIZA KATEA.

Globoarekin jokatzen jarraitu.

HH ikurrekin bi pertsona sortu ditugu: buruak globoak dira, eta gorputzak H letra.







Eraso eta jazarpenen aurrean gure desioa ezagutarazteko: LIBRE.

Kolore laranjarekin eta letra motarekin bateratuko ditugu planteamenduak.

Leloa klabe positiboetan eraikitzea komeni da jendartearen parte hartzea errazteko.

- Elkartasunetik konpromisora egin nahi dugu salto, konpromiso guzti horiekin lortuko dugulako konponbidea.
- Konprmiso horiek irudikatzeko giza katearen irudia erabiltzen jarrai dezakegu.













# Tipografia:

Explora izeneko tipograa erabili dugu. Erabilera librekoa da eta dafont.com webgunetik deskargatu daiteke.

A B C D E F G H I J K L M N

O P Q R S T U V W X Y Z

a b c d e f g h i j k l m n o

p q r s t u v w x y z

1234567890

Jarraitutako eredua:











# Materiala

## Kamisetak:







ekimenetarako kamiseta



# Txapak:







# Elkartasun pultsera:



# Pin desberdinak eskulan bidez:

Fieltrozkoak edo Goma EVAzkoak foamy
Hautatu laranja kolore desberdinak





# Propaganda ekintzak:

Giza kate laranjak nonahi:











Horma irudiak




Klarionak banatu herritarren artean margoketak egin ditzaten




Zebra bideak




## Pankartak:

HH epaiketarik ez!




LIBRE globoa




Zubi harresia




LIBRE giza katea



# Plantillak:




# Elkartasun haizea:

Norbanakoak egingo duen ekarpena nkatzeko iruditegia egin daiteke eta globo desberdinekin identikatu.



NIRE ETXEA ZUENA DA. Hau da sustatuko dugun elkartasun ekimen nagusia.

Identikazio ikurra erabiltzeari garrantzia eman behar diogu. Fieltrozko pin txukunak aterata.



**NIRE LAGUNAK ZENGANA HURRBILDUKO DITUT.** Harremanak



**NIRE ARGAZKIA ZUEN ONDOAN.** Argazki publikoa pertsona ezagunekin.



**NIRE AHOTSA ZUEN ALDE.** Iritzi publikoa emango dute komunikabideetan: iritzi artikuluak, tertuliak....



**EKARPEN EKONOMIKOA.**

# Zabalpena:

Herrietan burutzen diren dinamikak dokumentatu eta zabaltzeak garrantzia handia hartuko du.

- Posible den einean ekimenak bideoz grabatu.

- Ekimenaren aurrelanketa dokumentatzea ere oso garrantzitsua da. Lortzen ditugun emaitzak erakustea bezain garraitzitsua da jendartearen konpromisoak biltzeko egiten dugun lana erakustea.



Behin ekintza burututa igo materiala sarera eta sare sozialen bidez zabalduz:




libre.epaiketarikez.org
www.herriharresia.net
eleakmugimendua.info



@libreEH
@AskeGunea
@EleakMugimendua




Libre
herriharresia

